**Datu beldurgarri horiek erakusten dute bi estatuen izaera ez demokratikoa. Gatazka politikoari era demokratikoan erantzun behar zaio eta horretarako salbuespen egoera honekin amaitzea behar beharrezkoa da.**




*¡Euskal Herria salbuespen egoeran! aski da!*

# Euskal Herria SALBUESPEN EGOERAN, aski da!

Euskal Herrian bizi dugun gatazka politikoaren testuinguruan, frantziar eta espainiar estatuek **oinarrizko giza eskubideak zanpatzen dituzte egunero**. Euskal Herriari bere etorkizuna erabakitzeko aukera guztiak galarazi nahi dizkiote, eta horretarako bide guztiak erabili dituzte bi estatuek: *gerra zikina, torturak, alderdi eta antolakunde politikoen legez kanporatzea, herriak hautaturiko alkate eta zinegotzien aurkako sorgin ehiza eta espetxeratzea, preso politikoen eta beraien hurbilekoen heriotza biltzen duen espetxe politika...*

**Euskal Herrian estalitako salbuespen egoera batean bizi gara.**

**Azken 30 urteotan frantziar zein espainiar estatuen errepresioaren ondorioz:**

- 321 Euskal herritar hil dira
- 35.000tik gora izan dira atxilotuak
- 7.000tik gora izan dira torturatuak
- 4.000 preso politikotik gora izan dira
- 740 baino gehiago daude gaur egun
- 4 komunikabide izan dira zentsuratuak
- 10 alderdi politiko eta erakunde 1 legez kanporatuak